Kaixo lagunok!!! Haizea naiz eta gaur gelan egindakoa kontatuko dizuet. Gaur astelehena da eta makinista izatea egokitu zait. Andereñok asteburuan zer egin dudan galdetu dit.

Ba...ba... Autobusean bidai luze-luze eta aspergarri bat egin dut aitatxorekin. Oraingoan behintzat Josu eta Malen ere etorri dira gurekin. Malenen ama eta nirea elkarrekin bizi dira. Malen eta nik jolasean pasa genuen bidai guztia.

Huelva deitzen den hiri batera iritsi eta eguzkitan bazkaldu genuen. Gero amatxorekin jolasten aritu ginen, baina gizon gaizto batek, segituan jolasa bukatzeko esan eta ama eraman zuen. Andereño zergatik gizon hark ez dio amari gurekin denbora gehiagoz jolasten uzten?

Andereño ixilik geratu da, erantzunik gabe eta nik hizketan jarraitu dut. Andereño zergatik amak ez nau parkera eramaten? Zergatik nire ama ez da etortzen etxera bazkaltzera aitatxorekin eta nirekin? Zergatik pasatzen dut hainbeste denbora autobusean? Zergatik nire amak ezin du etxe handi horretatik irten?

Txokoetara joaterakoan Beñat, Naroa, Baasim eta ni jolas txokora joan gara. Baasim jostailuak banatzen hasi da eta niri sirena duen argi urdineko kotxea luzatu dit.

Nik kutxatik beste bat hartu dut. Kotxe sirenaduna, gizon gaizto hura bezala janzten direnek erabiltzen dute. Ni ez naiz gaiztoa eta jolastea asko gustatzen zait.

Patioan Baasim, Alfonso eta Gorane-rekin txirristan ibili naiz hasieran. Gero harrapaketan ibili gara Alfonso haserretu eta negarrez hasi den arte. Alfonsok ez du inor harrapatzen gurpildun aulkiarekin.

Lan txokoan ikurrinak margotzen aritu gara euskararen egunerako. Nik andereñoren kolore berdinak erabili ditut, Baasimek ez. Gorria, horia eta berdea egin du ikurrina.

Andereño haserretu egin da eta Baasim pentsatzeko txokora bidali du. Baasim negarrez egon da denbora luzez.

Txokoa aldatzean Baasim, Beñat, Naroa eta ni Etxe Txokora joan gara korrika eta Naroak esan du:

-Nik ama, nik ama.

-Nik umea- Beñatek.

Baina Baasimek eta nik aita izan nahi dugu.

Hirurak builaka hasi zaizkit.

-Haizea neskek ez dute mailurik erabiltzen Beñatek.

-Zerrarik ere ez- Naroak.

-Ezta aizkorarik ere- Baasimek.

Azkenean etxera joateko garaia iritsi da eta eskolatik irteteko zain nengoela, aitatxo ikusi eta beregana joan naiz andereñok poltsan sartu dizkidan fitxak eskuan hartuta. Gaur makarroiak prestatu dituela esan dit eta gainera denak jaten baditut sorpresa bat emango didala.

Etxean makarroi guzti-guztiak jan ditut eta aitatxok amak niretzako egin duen kometa ikaragarri polita eman dit. Hau bai egun zoriontsua!!! Nire bizitzako egunik zoriontsuena izan da!!!

